# KÉUREN MUNDUA

EGILEAK

Testua: Raquel Clemente

Irudiak: Omar Valdivia

Diseinua eta maketazioa: Rodolfo Pereira eta Raquel Clemente

Itzulpena: Idoia Galbarriatu eta Jone Xemein

Argitalpena: “Ola sin plástico” elkarte ekofeminista



www.olasinplastico.org

contacto: olasinplastico@gmail.com

## ESKAINTZA

Mundua hobetu nahi duzuen pertsona orori.

Aldaketaren parte zaretela uste duzuen guztioi.

Etorkizunean aldaketaren parte zaretela jakingo duzuen guztioi.

Lur planetari, dena emateagatik.



Kéu mundu gris batean jaio zen.



Zoriontsu hazi zen, ez baitzitzaion ezer falta. Behar zuen guztia eskura zuen.



Kéuk 7 urte bete zituenean, bere birraitonak istorio bat kontatu zion.



Bere adina zuenean bere mundua
koloretakoa zela esan zion;
ez zela grisa, zuria eta beltza.



Janaria otzaretan eta oihalezko poltsetan sartzen zela,
eta esnea beirazko botiletan saltzen zela
kontatu zion. Horrela, Lurra askoz garbiago zegoen.



Kéu asko harritu zen istorioarekin,
baina zentzugabeko istorio zahar bat
besterik ez zela pentsatu zuen.



Kéu naturarekin harreman estuan hazi zen,
bere familiarentzako beti izan baitzen garrantzitsua
lurrak eskaintzen zuenaz gozatzea.



Hala ere, urteek aurrera egin heinean,
Kéu konturatu zen lurra eta inguratzen zuen guztia
gero eta beltzago eta zikinago
bilakatzen ari zela, eta arduratzen hasi zen.



Udako egun batean, Kéu itsasoaz gozatzen zegoen, surf egiten. Olatu baten azpitik pasatu eta itsas azalera irtetzean plastiko handi batekin egin zuen topo.



Bere taularen inbentoari lotu eta ertzera irten zen.



Itsasertzean tamaina ezberdineko
plastiko gehiago ikusi zituen.



Jaso egin zituen eta zakarrontzira bota, haraino nola iritsi ote ziren bere buruari galdetzen zion bitartean.



Kéuk bere lagunei hondartzan aurkitutako plastikoei buruz hitz egin zien.



Batzuei aspergarria iruditu zitzaien gaia, baina beste batzuek Kéurekin hondartzara joatea erabaki zuten, plastikoak biltzera.



Zaborra biltzen zuenean inguruko paisaia koloreztatzen zela konturatu zen Kéu.
Eta ez hori bakarrik! Bere azalak eta bere arropak ere, geroz eta kolore biziagoak zituzten.



Txundituta, bere senide eta lagunei ere
berdina gertatzen zitzaiela konturatu zen.
Eta horrek oso zoriontsu egin zuen.



Hala ere plastikoak biltzea baino askoz gehiago egin beharko zuela pentsatu zuen. Denak berdin jarraituz gero, sekula ez zuen munduko plastiko guztiak jasotzea lortuko.




Beraz, ikertzen hasi zen eta Lurrari kolorea
bueltatu nahi zion jende gehiago ere
bazegoela ohartu zen.



Berrerabil zitezkeen botilak, banbuzko hortzetako eskuilak, erosketak egiteko oihalezko poltsak...Gauza miresgarriak ekoizten zuen jendea zegoela deskubritu zuen!




Eta bere birraitonaren garaian bezala, beste batzuek gauzak soltean eta ontziratu gabe erosteko dendak zabaltzen zituzten. Eta horrela konturatu zen zenbat eta jende gehiagok plastikoari ordezkoak bilatu eta zenbat eta jende gehiagok natura garbitu, Lurra koloretsuago bilakatzen zela.



Baina Kéurentzat liluragarriena honakoa izan zen: planeta zaintzeko konpromezua hartzen zuten pertsonek ere koloreak zituztela.

Kéurekin bat egingo
duzu zuk ere,
berriz ere
plastikorik gabeko
planeta koloretsu
bat izan dezagun?



## ESKER ONAK

Eskerrik asko liburu hau posible egin duzuen guztioi.

Omar Valdiviari irudien bitartez trasmititu nahi genuena islatzeagatik. Raquel Clementeri eta Rodolfo Pereirari liburuaren diseinu eta maketazioagatik eta eman diozun itxura biribilagaitik. Marta Vicenteri eta Raquel Clementeri istorioa sortzeagatik.

Mila esker Idoia Galbarriaturi eta Jone Xemeini itzulpena egiteagatik.

Proiektu hau egi bihurtzeko dirua eman duzuen pertsona bakoitzari, bereziki "Ola sin plastiko" elkartearen euskarri zareten jarraitzaile leialei.

Mila esker, bihotzez.

Kéu konturatu da mundua noizbait koloretakoa izan zela. Kutsadura, zaborra, plastikoak... denak eragin du mundua gris kolorekoa bihurtzea. Kéuk zaborrik gabeko mundua nahi du. Lortuko ote du planetari bere koloreak itzultzea?

Liburu honen bidez, haurrak eta helduak plastikoaren arazoari buruz gogoeta egitera gonbidatu nahi ditugu.

Kéurekin bat egingo duzu?

Informazio gehiago, hemen: www.olasinplastico.org

